**OHARRA**

Ekainaren 2an Gernikan, eztabaidaren ondorioak plazaratu berri ditugu Adierazpen politiko baten bidez. Sortutako erreakzio politikoei nola komunikabideen interesari so eginez gero, eta kontrakoa dioten arren, Kolektiboaren hitzari ematen zaion garrantziaren adierazgarri izan da.

Oinarrizko kokapen politikoa egin dugu egoera politiko orokorraren baitan, gako esanguratsuenak aintzat hartuz. Aurrerantzean ere urrats eta ekimen berriak emateko determinazioa azpimarratu nahi izan dugu, baldintza berrien perspektiban.

Etsigarri suertatu zaio bati baino gehiagori Kolektiboak erabaki eta adierazitakoa. Ulergarri dakiguke euskal presoak suntsitu beste asmorik ez dutenek edota bere hautu partikularra jantzi edo babestu nahi duenak, bestelakorik desiratu izana. Oso kezkagarri, jeltzaleek lehendakarigaiaren ahotan, garai politiko berriotan ere, Gobernu espainolak aurkeztutako plana ontzat eman ondoren EPPKren posizionamendua baztertu eta biktimismoa egitea leporatzea. Aintzat hartu beharko luke PNVren buruzagitzak espetxe politika kriminalak erantzukizun zuzenak badituelako. PNVren morrontza ekonomiko, politiko eta ideolojikoak Espainiaren hondamendirako bidea soilik dakar.

Etsigarri ez eta bai salagarri dena da, gaur gaurkoz Gobernuek mantentzen duten jarrera, interes eta xede politiko makurrak gidaturik urratsetan sakondu baino arazoa luzatuz daramaten atzerapenagatik.

Atzerapen gehiagorik gabe muturreko egoerak altxatu behar dituzte, salbuespen legeak indargabetu, sakabanaketarekin amaitu eta euskal preso politiko guztion Euskal Herriratzea gauzatu. Ez da dudarik, ezinbesteko diren urrats horiek baldintza politiko berriak ekarriko dituztela arestian aipatzen genituen urrats eta ekimen berriak garatzeko. Euskal gizarteak eutsi behar dio erronkari presoon egoeraren konponbidea guztion onerako baita.

Barruan, espetxe bakoitzean, dinamika iraunkorrarekin jarraituko dugu, hileko azken ostiralero gure aldarrikapen eta mugimenduak eginez. Bestalde, Ekainaren 16an Nafarroaren konkistaren V.mendeurrena salatzeko Iruñean antolatutako Martxarekin bat egin eta bertan parte hartzera deitzen dugu.

**Amnistia-Autodeterminazioa! Nafarroa bizirik! Euskal Herria bizirik!**

**2012ko ekainean**

**EPPK Euskal Preso Politikoen Kolektiboa**

Ohar honekin, eztabaidaren markoan hautaturik eta antolakuntza berrian kokaturik, Kolektiboaren ordezkaritza osoa ezagutzera ematen dugu, Mintzakidetzarekin batera

Kolektiboaren Zuzendaritza osatzen duena:

Xabier Alegria Loinaz (Lezo/Puerto III)-mintzakide-

Ana Egues Gurrutxaga (Elduaien/Algeciras)-mintzakide-

Jon Olarra Guridi (Donostia/Granada)-mintzakide-

Mikel Albisu Iriarte(Donostia/Lyon)-mintzakide-

Marixol Iparragirre Guenetxea(Eskoriatza/Lyon)-mintzakide-

Lorentxa Gimon (Angelu/Rennes)-mintzakide-

Iñaki Lopez de Bergara Astola (Legutio/ Arles)

Alberto Lopez de Lacalle (Gasteiz/ Fleury Merogis)

Jon Salaberria Sansinenea (Donostia/ Fleury Merogis)

Iñaki Esparza Luri (Iruñea/ Lannemezan)

Pello Eskisabel Urtuzaga (Lasarte/ Clairvaux)

Asier Oiartzabal Txapartegi (Andoain/ Clairvaux)

Oihana San Vicente Saez de Zerain (Gasteiz/ Fleury Merogis)

Ainhoa Mujika Goñi (Donostia/ Granada)

Ana Lizarralde Palacios (Bilbo/ Granada)

Antton Lopez Ruiz (Elorrio/ Puerto I)

Josetxo Arizkuren Ruiz (Iruñea/ A Lama)

Idoia Martinez Garcia (Arrigorriaga/ A Lama)

Arantza Garbaio Ruiz (Bilbo/ Algeciras)

Unai Fano Aldasoro (Hernani/ Algeciras)

**2012ko ekainean**

**EPPK Euskal Preso Politikoen Kolektiboa**